# URTEAN ZEHARREKO XXXIII. DOMEKA
## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Gogotsu egiten dabe lan haren eskuek.*

Esaera Zaharrak liburutik

*Es* 31, 10-13. 19-20. 30-31

Nork aurkituko etxekoandre arduratsua?
Harribitxiak baino askoz baliotsuagoa da.
Konfiantza osoa dau senarrak harengan,
eta ez da sekula beharrizanean aurkituko.
Zoriona ekartzen deutso, ez zoritxarra,
bizitzako egun guztietan.
Artilea eta lihoa eskuratzen ditu,
gogotsu egiten dabe lan haren eskuek.

Eskuaz goruari heltzen deutso
eta atzamarrez ardatzari eragiten.
Dohakabeari eskua zabaltzen deutso
eta behartsuari laguntza emoten.

Guzurrezkoa da lilura, alperrekoa edertasuna;

goragarria, ostera, Jaunari begirune deutson emakumea.
Emon egiozuez eskerrak bere eskuen lanagaitik,
goratu herri osoaren aurrean berak eginagaitik.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 128 [127], 1-2. 3. 4-5 (R/. 1a)

R/. **Zorionekoa Jaunari begirune deutsona.**

V/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsona
eta haren bideetan dabilena!
Zeure lanaren frututik dozu jango,
zoriontsu izango zara eta ondo jatzu joango. R/.

V/. Emaztea mahatsondo emonkorraren antzeko
zure etxe barruan;
seme-alabak olibondo-kimuen antzeko
zure mahai inguruan. R/.

V/. Hara zelan izango dan bedeinkatua
Jaunari begirune deutsona!
Bedeinkatu zagizala Jaunak Siondik,
gozatu zaitezala Jerusalemen zorionaz
zeure bizitzako egun guztietan. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Ez zagiezala Jaunaren egunak lapurrak lez harrapatu.*

San Paulo Apostoluak Tesalonikarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ts* 5, 1-6

Senideok: Jaunaren etorrera noiz eta zelan izango dan ez dozue nik idatzi beharrik; zeuek dakizue nahiko ondo Jaunaren eguna lapurra gauez lez etorriko dana.

«Bakea eta nasaitasuna» esaten diharduenean, orduan uste barik etorriko jake hondamendia gainera, umedun dagoanari erdiminak lez, eta ez dabe ihes egiterik izango. Zuek, ostera, senideok, ez zarie ilunpean bizi, egun horrek lapurrak lez harrapatzeko zorian; guztiok argiaren eta egunaren seme-alaba zarie. Ez gara gauarenak, ez ilunarenak. Beraz, ez daigun lorik egin besteek lez; gagozan erne, eta izan gaitezan neurritsu.

Jaunak esana.

Aleluia

*Jn* 15, 4a. 5b

R/. **Aleluia.**

V/. Zagoze Nigan, Ni zuengan lez, dino

Jaunak;
norbait Nigan badago,
horrek frutu asko emongo dau. R/.

## EBANJELIOA

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Gauza txikian leial izan zaralako,*
*sartu zeure nagusiaren jaia ospatzera.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 25, 14-30

Aldi haretan, Jesusek parabola hau esan eutsen ikasleei: «Gizon batek, urrutira joaterakoan, bere morroiei dei egin eta bere ondasunak itzi eutsezan. Bati bost talentu emon eutsozan, beste bati bi, beste bati bakarra; bakotxari bere trebetasunaren arabera. Eta gero joan egin zan. Bost talentu hartu zituana hareekin lanean hasi zan behingoan, eta beste bost irabazi zituan. Bi hartu zituanak be gauza bera egin eban, eta beste bi irabazi zituan. Bat hartu ebanak, ostera, lurrean zuloa egin eta bertan gorde eban bere nagusiaren dirua.

Handik luzarora, etorri zan morroi hareen nagusia, eta kontuak garbitzen hasi jaken. Hurreratu zan bost talentu

hartu zituana, eta beste bost eroan eutsozan, esanez: “Jauna, bost talentu itzi zeunstazan; begira, beste bost irabazi dodaz”. Nagusiak esan eutson: “Ederto, morroi zintzo eta jatorra! Gauza txikian zintzoa izan zaralako, askoren buruzagi egingo zaitut; sartu zeure nagusiaren jaia ospatzera”.

Hurreratu zan talentu bi hartu zituana, eta esan eutson: “Jauna, talentu bi itzi zeunstazan; begira, beste bi irabazi dodaz”. Nagusiak esan eutson: “Ederto, morroi zintzo eta jatorra! Gauza txikian zintzo izan zaralako, askoren buruzagi egingo zaitut; sartu zeure nagusiaren jaia ospatzera”.

Azkenean, hurreratu zan talentu bat hartu ebana, eta esan eutson: “Jauna, banekian gizon zorrotza zarana; erein ez dozun lekuan hartzen, eta zabaldu ez dozun lekuan batzen dozuna. Halandaze, bildurrez joan nintzan, eta lurpean gorde neban zure talentua. Hemen dozu zeurea!”

Nagusiak erantzun eutson: “Morroi txar eta alper hori! Bahekian jakin, erein ez dodan lekuan hartzen dodana

nik, eta zabaldu ez dodan lekuan batzen. Horregaitik, nire dirua diru-trukalariei itzi behar heutsen, nik, etortzean, irabazi eta guzti jaso nengian. Kendu eiozue, bada, talentu hori, eta emon hamar dituanari. Ze dauanari emon egingo jako, eta gainezka izango dau; ez daukanari, barriz, daukana be kendu egingo jako. Eta morroi alper handi hori bota kanpoko ilunpera. Han izango da negarra eta hagin-karraskada!”»

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean.

*Gauza txikian leial izan zaralako,*
*sartu zeure nagusiaren jaia ospatzera.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 25, 14-15. 19-21

Aldi haretan, Jesusek parabola hau esan eutsen ikasleei: «Gizon batek, urrutira joaterakoan, bere morroiei dei egin eta bere ondasunak itzi eutsezan. Bati bost talentu emon eutsozan, beste bati bi, beste bati bakarra; bakotxari bere trebetasunaren arabera. Eta gero joan egin zan.

Handik luzarora, etorri zan morroi hareen nagusia, eta kontuak garbitzen hasi jaken. Hurreratu zan bost talentu hartu zituana, eta beste bost eroan eutsozan, esanez: “Jauna, bost talentu itzi zeunstazan; begira, beste bost irabazi dodaz”. Nagusiak esan eutson: “Ederto, morroi zintzo eta jatorra! Gauza txikian zintzoa izan zaralako, askoren buruzagi egingo zaitut; sartu zeure nagusiaren jaia ospatzera”.

Jaunak esana.

---

# URTEAN ZEHARREKO XXXIII. DOMEKA
## B urtean

## I. IRAKURGAIA

*Aldi haretan salbatuko da zure herria.*

Danielen Profezia liburutik

*Dn* 12, 1-3

Sasoi haretan, aingeruen buruzagia eta zure herriaren zaindaria dan Mikael agertuko da. Larrialdi-sasoia izango da, herriak izaten hasi ziranetik bardinik bakoa. Baina aldi haretan salbatuko da zure herria, biziaren liburuan euren

izena idatzi daben guztiak, hain zuzen be.

Itzartu egingo da hilobietan lo dagoan asko: batzuk betiko bizitzarako, besteak betiko lotsarako. Ortziaren distiraz distiratuko dabe jakintsuek, eta besteei bide zuzenean ibiltzen irakatsi deutsienek izarrek lez betieran.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 16 [15], 5 eta 8. 9-10. 11 (R/. 1)

R/. **Zaindu nagizu, Jauna,**
**babes bila nator-eta Zugana.**

V/. Jauna, Zu zaitut neure ondarea, neure edontzia,
zeure esku dago nire zoria.
Begi aurrean dot Jauna eten barik;
ha eskuman dodala, ez naiteke dardaratu. R/.

V/. Horregaitik, alai dot bihotza, pozik erraiak,
atsedenean nasai gorputza.
Ez dozu-eta nire bizia Herio-lezara jaurtiko,
ezta be zeure fededuna hilobian galtzen itziko. R/.

V/. Bizirako bidea erakutsiko deustazu;

alaitasunez beteko nozu zeure aurrean,
zorionez betiko zeure ondoan. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Opari bakar baten bidez,*
*euren betera eroan ditu*
*Jainkoarentzat behin betiko sagaratuak diranak.*

Hebrearrei egindako epistolatik

*Heb* 10, 11-14. 18

Senideok: Abadeak egunero dihardu bere kultu-zerbitzuan, pekatua ezelan be kendu ezin daben opari berberak behin eta barriro eskeintzen. Kristo, ostera, pekatuakaitik opari bat bakarra eskeini ondoren, Jainkoaren eskumaldean jesarri zan behin betiko. Eta, orain, Jainkoak arerioak oin-aulkitzat noiz jarriko deutsozan itxaroten dago. Izan be, opari bakar baten bidez euren betera eroan ditu Jainkoarentzat behin betiko sagaratuak diranak.

Holan bada, pekatuak parkaturik dagozanean, ez dago pekatuen parkamenerako opari beharrik.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Lk* 21, 36

R/. **Aleluia.**
V/. Egon erne eta egin otoitz une oro,
zutunik egon ahal zaitezen Gizonaren Semearen aurrean. R/.

## EBANJELIOA

*Gizonaren Semeak*
*lau haizeetatik batuko ditu bere aukeratuak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 13, 24-32

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Egun hareetan, larrialdi handiaren ostean, eguzkia ilundu egingo da, iretargiak ez dau argirik emongo, izarrak zerutik jausten hasiko dira eta ortziak dar-dar egingo dau. Orduan, Gizonaren Semea ikusiko dabe hodei artean ahalmenez eta aintzaz beterik etortzen; aingeruak bialduko ditu eta bere aukeratuak batuko lau haizeetatik, lur-muga batetik besteraino.

Ikasi ikondoaren irudi honetatik: kimua barritzen eta orria zabaltzen jakoneko, badakizue uda hurrean dana. Era berean, gauza horreek gertatzen ikusikeran, jakizue hurrean dala,

ateetan, Gizonaren Semea. Benetan dinotsuet: Gizaldi honetakoak hil baino lehenago gertatuko dira gauza honeek guztiok. Zeru-lurrak igaroko dira, baina nire berbak ez dira bete barik igaroko. Zein egun eta ordutan gertatuko dan, ostera, ez daki inork, ez zeruko aingeruek, ez Semeak, Aitak baino».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXXIII. DOMEKA

## C urtean

### I. Irakurgaia

*Eguzkia lez agertuko da nire justizia.*

Malakiasen Profezia liburutik

*Ml* 3, 19-20a

Begira: «Badator eguna, labea baizen kiskalgarria. Harro eta gaizkile guztiak lasto izango dira, eta zeharo kiskaliko ditu etortzekoa dan egunak; ez deutse itziko, ez sustrairik, ez abarrik. Baina zuentzat, nire izenari begirune deutsazuenentzat, eguzkia lez agertuko da nire justizia, errainuetan osasuna dakarrela».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 98 [97], 5-6. 7-8. 9 (R/. ik. 9)

R/. **Badator Jauna herriak zuzentasunez epaitzera.**

V/. Ospatu Jauna zitaraz,
zitaraz eta kantu-hotsez,
turutaz eta adar-hotsez;
egin irrintzi errege dan Jaunari. R/.

V/. Egin begi orroe itsasoak eta bertako guztiak,
munduak eta bertan bizi diranek.
Egin begie txalo ibaiek,
poz-oihu aho batez mendiek. R/.

V/. Jaunaren aurrean,
badator-eta lurra epaitzera.
Justiziaz epaituko dau mundua,
eta zuzenbidez herriak. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Lanik egin nahi ez dauanak ez dagiala jan.*

San Paulo Apostoluak Tesalonikarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ts* 3, 7-12

Senideok: Ondo dakizue zelan jokatu behar dozuen guk lez egiteko; ez ginan zuen artean zabarkerian bizi izan, ez genduan inoren kontura ogia jan;

ostera, gau eta egun lanean nekatu ginan, zuetako inorentzat zama ez izatearren. Bagenduan zuen kontura bizitzeko eskubidea, baina lan egin nahi izan genduan zuei jarraibidea emoteko. Zuekin egon ginanean, arau hau emon geuntsuen: lanik egin nahi ez dauanak ez dagiala jan. Izan be jakin dogu-eta zuetako batzuk alperkerian bizi dirala, ezer egin barik, non zer barri. Holakoei Jesu Kristo Jaunaren izenean agintzen eta erregutzen deutsegu, bakean lan eginez, irabazi dagiela euren ogia.

Jaunak esana.

Aleluia

*Lk* 21, 28

R/. **Aleluia.**
V/. Izan bihotz eta jaso burua, hurreratzen dihardu-eta zuen askapenak. R/.

## EBANJELIOA

*Iraupenaren iraupenez lortuko dozue bizia.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 21, 5-19

Aldi haretan, tenplua gogoan ebela ziharduen batzuk, harri ederrez eta opariz

apainduta egoala aitatuz. Orduan, Jesusek esan eutsen: «Etorriko da, hor ikusten dozuezan horreetatik guztietatik harririk harri gainean geldituko ez dan sasoia; dana desegingo dabe».

Ikasleek itaundu eutsoen: «Maisu, noiz gertatuko da hori? Eta zertan igarriko dogu gertatzera doana?»

Jesusek erantzun eutsen: «Kontuz, ez zagiezala inork engainatu! Asko etorriko dira nire izenean, “neu naz Mesias” edo “gainean da sasoia” esanez. Ez joan holakoen atzetik. Gerra- eta iraultza-hotsak entzutean, ez ikaratu, ze, lehenengo gertatu beharrekoa da hori guztiori; baina ez dator behingoan azkena».

Esan eutsen, gainera: «Nazinoa nazinoaren aurka eta erreinua erreinuaren aurka altzatuko dira; lurrikara handiak izango dira, eta izurriteak eta goseteak han eta hemen. Gauza ikaragarriak gertatuko dira, eta seinale handiak agertuko zeruan.

Baina hori guztia gertatu aurretik, eskua botako deutsuee eta eraso egingo, sinagogetara eta kartzeletara eroango zaituee, eta erregeen eta agintarien aurrera zuzenduko Neugaitik. Autormen egiteko aukera emongo deutsue horrek

guztiak. Hartu gogoan ez dozuela zeuen burua zelan defendiduko kezkatan ibili beharrik; Neuk adierazoko deutsuet zer eta zelan esan, eta zuen arerioetako inork ez dau zuei aurre egiterik edo erantzuterik izango.

Zeuen guraso eta senideek eurek, ahaide eta adiskideek eurek salduko zaituee, eta zuetariko batzuk hilko; guztiek gorroto izango deutsuee Neugaitik; baina ez dozue buruko ule bakar bat be galduko. Iraupenaren iraupenez lortuko dozue bizia».

Jaunak esana.